## BERRIDATZI ESALDIOK:

1. Gezurti hutsa izan arren, oraingoan egia esan du.

   **Gezurti hutsa den arren, oraingoan egia esan du.**

   **Nahiz eta gezurti hutsa den, oraingoan egia esan du.**

   **Nahiz eta gezurti hutsa izan, oraingoan egia esan du.**

   **Gezurti hutsa bada ere, oraingoan egia esan du.**

2. Nahiz eta oso egoera larrian zegoen, ez zion inori laguntzarik eskatu.

   **Nahiz eta oso egoera larrian egon, ez zion inori laguntzarik eskatu.**

   **Oso egoera larrian zegoen arren, ez zion inori laguntzarik eskatu.**

   **Oso egoera larrian egon arren, ez zion inori laguntzarik eskatu.**

   **Oso egoera larrian bazegoen ere, ez zion inori laguntzarik eskatu.**

3. Eguraldi txarra egin bazuen ere, oso txango polita izan zen.

   **Eguraldi txarra egin zuen arren , oso txango polita izan zen .**

   **Eguraldi txarra egin arren, oso txango polita izan zen.**

   **Nahiz eta eguraldi txarra egin zuen, oso txango polita izan zen .**

   **Nahiz eta eguraldi txarra egin, oso txango polita izan zen.**

## "-TA ERE" EDO "-(R)IK" FORMAK ERABILIZ EUSKARATU ESALDIOK:

1. **Mozkortuta egonda (egonik) ere, ez naiz zure autoan igoko.**
2. **Argiak itzalita (itzalirik) ere, ezagutu egingo zaitut.**
3. **Hotz handia eginda (eginik) ere, mendian ez dugu surik egingo.**
4. **Arrazoi izanda (izanik) ere, ez da jokaera zuzena.**
5. **Ikastaroa ez gaindituta (gainditurik) ere, gurasoek motorra erosiko didate.**
6. **Irakasle berria ergela izanda (izanik) ere, harrera ona egingo diogu.**

BERRIDATZI ESALDIOK:

4. Maiteminduta ez bazegoen ere, diruagatik ezkondu zen.

**Maiteminduta ez zegoen arren , diruagatik ezkondu zen.**

**Maiteminduta (ez) egon ez arren, diruagatik ezkondu zen.**

**Nahiz eta maiteminduta ez zegoen, diruagatik ezkondu zen.**

**Nahiz eta maiteminduta (ez) egon ez, diruagatik ezkondu zen.**

5. Inoiz egia esaten ez zuen arren, hartan denok sinistu genion.

**Inoiz egia esaten ez zuen arren, hartan denok sinistu genion .**

**Nahiz eta inoiz egia esaten ez zuen, hartan denok sinistu genion.**

**Nahiz eta inoiz egia (ez) esan ez, hartan denok sinistu genion.**

**Inoiz egia esaten ez bazuen ere, hartan denok sinistu genion.**

6. Nahiz eta pelikula hori oso ona ez den, zazpi Oscar irabazi ditu.

**Nahiz eta pelikula hori oso ona (ez) izan ez, zazpi Oscar irabazi ditu.**

**Pelikula hori oso ona ez den arren, zazpi Oscar irabazi ditu.**

**Pelikula hori oso ona (ez) izan ez arren, zazpi Oscar irabazi ditu.**

**Pelikula hori oso ona ez bada ere, zazpi Oscar irabazi ditu.**

**"-TA ERE" EDO "-(R)IK" FORMAK ERABILIZ EUSKARATU ESALDIOK:**

1. **Loteria tokatuta(tokaturik) ere, ez dut beste etxerik erosiko**
2. **Oso dibertigarria izanda (izanik) ere, ez dut pelikula hori ikusiko.**
3. **Bertuteak izanda (izanik) ere, nik akatsak bakarrik ikusten ditut.**
4. **Dirurik ez izanda (izanik) ere, ez nuke inoiz eskaintza hori onartuko.**
5. **Garazi ez iritsita (iritsirik) ere, ez gara zu gabe joango.**
6. **Umea gau osoan ez isilduta (isildurik) ere, ez gara ohetik altxatuko.**